# otsaila

Otsailean ere ez dira gauzak gehiegi aldatu gure senide eta lagunentzat; ezta guretzat ere. 603 euskal preso politikok 83 espetxetan sakabanatuta jarraitzen dute, hauetako 582k Euskal Herritik urrun jarraitzen dute, gainera. Gure eta gure senideen aurkako jazarpenarekin jarraitzen dute. Gurearekin diogu, hilabetekari honetan irakur daitekeen bezala, edozein une egokia delako gure aurkako erasoak aurrera eramateko. Eta eraso hauek zuzenak izaten ez direnean ere, espetxe politika bizi dugunok ondorio gogorrak jasan behar izaten ditugu. Izan ere, sakabanaketak jada eragin du 2013. urte honetako lehen istripua. Beste hiru euskal presori aplikatu diete bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina. Eta senideok jasan behar dugun jazarpena ere agerian gelditu da hilabete honetan zehar, bisita bat burutzera joan eta aurreko egunean hotelean lo zeudela polizia nazionalak goizaldera bere loa apurtu zuen hiru senideen, hauetako bat 11 urtekoa, kasua ikusita.

603

Baina, batez ere gure senideek egunero euren errealitate gogorra bizitzen jarraitu behar dute. Asistentzia mediku egoki bat jaso gabe, isolamendu eta bakartze neurrien pean, komunikaziorako arazoekin, miaketekin, bizi osorako espetxe zigorrekin... Eta azken puntu hau izan da hilabete honetan albo batera utzi ezin izan dugun gaia. Martxoaren 20an hasiko baita Europako Giza Eskubideen Areto nagusia Ines del Rioren kasua dela eta Espainiak jarritako errekurtsoa. Dudarik salbuespeneko espetxe politika bizi dugun guztiontzat mugarri izango den data da honakoa, eta ematen den ebazpenak guztiongan izango du eragina. Eta nola ez, gauzak honela, hilabete honetako gaia 197/2006 doktrina da; Amaia Izko abokatuak martxoaren 20an aztertzen hasiko diren erabakiaren inguruko zenbait zalantza argitu dizkigularik.

Azkenik, ezin aipatu gabe utzi Etxerat osatzen dugun preso, iheslari eta deportatuen senide guztiok otsailaren 17an burutu genuen XII. Batzar Nazionalean. Bertan elkartea osatzen dugun senide eta lagun guztiok bildu ginen, aurrera begirako gure lan ildo nagusiak ezarri eta lantzeko. Gainera, azken finean elkarren arteko kohesioa eta kolektibotasuna lantzeko ere oso garrantzitsua izaten da urteroko zita hau.

# sakabanaketa

## 603 euskal preso politiko 83 espetxetan sakabanatuta

- 439 preso espainiar estatuko 45 espetxetan sakabanatuta
- 134 preso frantziar estatuko 32 espetxetan sakabanatuta
- 10 preso Euskal Herriko 3 espetxetan daude
- 4 preso Ingalaterrako espetxe batean
- Preso 1 Ipar Irlandako espetxe batean
- Preso 1 Portugalgo espetxe batean
- Preso 1 Brasilgo espetxe batean
- Preso 1 etxean preso dago, Italian, Erroman
- 11 preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta
- Preso 1 Autunen (Frantzian) dago, konfinatua

- **87** euskal preso — Euskal Herritik **1000 eta 1.100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **161** euskal preso — Euskal Herritik **800 eta 1.000** kilometrotara dauden espetxeetan
- **136** euskal preso — Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan
- **101** euskal preso — Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan
- **88** euskal preso — Euskal Herritik **400** kilometrotara dauden espetxeetan
- euskal preso bat — Euskal Herritik **900** kilometrotara **konfinatua**
- **8** euskal preso — Euskal Herritik urrun dauden 5 herrialdetako espetxeetan

# gaixo larriak

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru euskal preso politikoek espetxean jarraitzen dute, eta beste hainbat presok ere gaixotasun ugari pairatzen dituzte. Espetxean urte igaro pasa behar izateak, eragin zuzena du presoengan. Eta gaixotasunak dituztenen artean ere oso zaila izaten da asistentzia mediku egokia jasotzea. Honen adibide, Villenako espetxean emakumezkoek kexa bat sartu behar izatea, euren konfiantzazko ginekologoa ikusi ahal izateko.

13

Horregatik, gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen kasuan ezinbestekotzat jotzen dugu kalean egotea, asistentzia egoki bat jaso eta euren osasun egoerak hobera egiteko. Baina, era beran, espetxean dauden eta gaixotasunak pairatzen dituzten euskal preso politikoen kasuan ere, asistentzia mediku egokia jasotzeaz gain, ezinbestekoa da, orain ez bezala, elikadura egoki bat izatea, kirola egiteko aukera izatea, bizi baldintza egokiak izatea... Guzti honek eragin zuzena baitu, euren osasunean.

# salbuespen neurriak

## Bizi osorako espetxe zigorra
## Baldintzapeko askatasuna

Hilabete honetan ere, hiru euskal preso politikori aplikatu diete, bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina. **Ramon Aldasoro, Raul Alonso eta Iñaki Gonzalo** presoei luzatu diete euren zigorra eta ondorioz, **93 dira** jada 197/2006 doktrinaren bitartez euren zigorra luzatu dieten euskal preso politikoak. **93 hauetatik 71k oraindik** preso jarraitzen dute (hilabete honetan aske geratu dira Iñaki Pujana eta Jesus Bollada). Eta 197/2006 doktrina aplikatua duten beste 22 preso, berriz, kalean aurkitzen dira, bai Entzutegi Nazionalak bertan behera utzi dituelako euren zigor luzapenak edo baita zigorra beteta kaleratuak izan direlako ere.

71

Batetik, Ramon Aldasoro otxandioarrari aplikatu diote 197/2006 doktrina. Aldasoro egun Castello II-Albocasser espetxean dago. 1997an espetxeratua izan zen, eta ondorioz 16 urte daramatza preso. Irteera data 2017ko urriaren 27rako finkatua bazuen ere, irteera data 2027ra arte atzeratu diote. Bestetik, Raul Alonso Alvarez bilbotarrari aplikatu diote 197/2006 doktrina. Bera ere egun Castello II-Albocasser espetxean dago. 1991ean espetxeratua izan zen, eta beraz, 22 urte daramatza preso. Irteera data 2015ko martxoaren 25erako zuen, baina, orain 2021ra arte luzatu diote. Azkenik, Valladoliden preso dagoen Iñaki Gonzalo Casal getxotarrari ere 197/2006 doktrina aplikatu diote. Gonzalo 1994an espetxeratua izan zen, beraz, 19 urte daramatza preso. Irteera data 2013ko maiatzaren 4rako zuen. Oraingoz ez diote irteera data berririk jarri.

Bestalde, Jakes Esnal, Frederik Haranburu eta Jon Kepa Parot presoak, Frantzian bizi osorako zigortuak izan dira "perpétuité" neurriaren bidez. Laster espetxean 24. urtea betetzen hasiko dira, nahiz eta baldintzapeko askatasunaren irizpideak bete duela 5 urtetik.

130

Euskal preso politikoei aplikatzen zaien beste salbuespeneko neurri bat da baldintzapeko askatasunaren ukatzea da. 130 euskal preso politikok baldintzapeko askatasunean aske egoteko baldintzak betetzen dituzten arren, preso jarraitzen dute bai estatu espainiarrean eta baita frantziarrean ere. (Preso hauen zerrenda eranskinetan aurki daiteke).

Honekin lotuta, urtarrilaren 23an, Kondenaren Aplikaziorako Epaitegiak Argi Perurena euskal presoaren baldintzapeko askatasunaren eskaera onartu zuen. Fiskaltzak, ordea, epaitegiaren erabakiaren aurkako helegitea jarri zuen, eta ondorioz Argiren askatasunaren inguruko erabakia martxora arte atzeratu dute. Gauzak honela, Argik preso jarraitu behar du; jada 13 urte daramatza preso.

**Martxoaren 20an,** Europako Giza Eskubideen Auzitegian Ines del Rioren kasuaren inguruko ebazpena dela eta, Espainiak jarritako helegitea aztertzen hasiko dira. Eta nolabait guretzat ezinbestekoa izango den mugarri bat jarriko dute bertan. 197/2006 doktrinaren aplikazioa neurri krudela da, eta Estrasburgoko epaiak argi utzi bezala presoen giza eskubideen aurkako eraso zuzena da. Neurri honek euskal preso politikoei bizi osorako espetxe zigorra aplikatzea ahalbidetzeaz gain, senide eta lagunoi ere salbuespeneko espetxe politika baten ondorioak bizi osoan jasatea eragiten digu.

# espetxeetan
# eskubide urraketak
# bestelako gertakariak

## Isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da.

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Heria** | Zaballa | Txus Martin |
| **Espainiar estatuan** | Soto del Real | Ibai Peña |
| **Frantziar estatuan** | Joux La Ville | Marian Aramendi |
| | Joux La Ville | Julen Eizagirre |
| | Uzerche | Mattin Olzomendi |
| | Tarascon | Ibai Sueskun |

**Ibai Sueskun** presoa, abendutik asteazkenero espetxeko janariari uko egiten dio, bere bakartasuna salatzeko. Espetxe agintariei eta ministroari gutunak igorri dizkie.

## Miaketak

Miaketak gogorrak eta zorrotzak jasan dituzte **Huelva, Cordoba, Dueñas eta Foncalent** espetxeetan, besteak beste. Esan bezala, miaketak gogorrak izan ziren, funtzionario askok egindakoak eta ziegak goitik behera miatu zituzten.

**Puerto III espetxean,** Aitor Cotano presoa biluzarazi zuten miaketa bat egiteko goizeko aurrez aurreko bisitatik bueltan. Baina, gainera, funtzionarioak flexioak egitera behartu nahi izan zuen. Aitor Cotano ukatu egin zen (orkatilan arazoak ditu eta makuluekin dabil). Ondorioz, isolamendura eraman zuten, eta arratsaldean zuen bisita kendu zioten. Bere bikoteari inongo azalpenik eman gabe, bisitarik ez zuela izango jakinarazi zioten. Eztabaida eta erreklamazio askoren ostean, lortu zuen Zerbitzu buruak azalpenak ematea, eta Aitorrek beraien aginduak ez betetzeagatik isolamenduan zegoela esan zioten. Handik ordu batzuetara berriro modulura eraman zuten Aitor, baina, bisita kentzea lortu zuten.

**Frantziako espetxe gehienetan,** ziegetara bueltan (bisitetatik, abokatuekin egotetik, ziega miatu ondoren, epailearena doazen bakoitzean) biluzarazi egiten dituzte.

## Komunikazio arazoak

Bikote diren eta bananduta dauden **Marta Igarriz**ek (Castello I) eta **Karmelo Lauzirika**k (**Puerto I**) eskuratu zuten komunikatzeko baimena errekurritu du fiskalak.

**Algeciras:** Gabonetako postalak euskaraz idazteko jasotako debekuaren publikazioa eta gero, gaztelerako gutunak ere 14 egunez atxikiko dizkietela jakinarazi zieten.

**Sevilla II:** Abendutik aurrera paketeetan bi argitalpenetik gora sartzea debekatu diete.

**Telefono deiekin arazoak:** Deiak osorik burutu ahal izateko arazoak izan dituzte hainbat espetxetan: Topas, Puerto I, Meaux...

## Sakabanaketak eragindako istripua

**Herrera espetxean** preso dagoen **Mitxel Turrientes** lasartearraren hiru lagunek sakabanaketak 2013. urtean eragindako lehen **istripua** pairatu zuten, otsailaren 1ean, bisitara zihoazela. Burgos parean zihoazenean, errepidean kazkabarra eta izotza zegoen, eta ondorioz kotxearen kontrola galdu zuten. Zorionez, hiru lagunak ez ziren zauritu, baina, autoak kolpe handia zuen. Gauzak honela, bisitarik egin gabe eta autoa Burgosen utzita itzuli behar izan zuten etxera, taxi batean.

## Senideekiko jazarpena

**Otsailaren hirugarren asteburuan**, Foncalent espetxean dagoen Aitziber Coelloren senideak bera bisitatzera joan ziren. **Goizaldeko 03:00etan**, hotelean lo zeudela, **sei polizia nazionalek** (uniformerik gabe zegoen 6 hauetako pertsona bakarra identifikatu zen) gelako atea jo zieten, bertan sartu eta **senideak identifikatzeko**. Hasiera batean, gainera, guztiak barrura sartzera zihoazen, baina 11 urteko haur bat zegoela eta kanpoan gelditzeko eskatutakoan, uniformatu gabe zegoen bakarra sartu zen. Honek ordu horietan izan dezakeen eraginaz gain, eta inongo abisurik gabe hotel bateko gelan sartzeko duten zilegitasuna erabat zalantzan jartzean gain, kontutan hartu behar da bertan aurkitzen zen senideetako bat, 11 urteko haur bat zela.

**Otsailaren 3an**, Foncalentetik zetorren senideen furgoneta gelditu zuen **ertzaintzak** eta bertan geldirik eduki zituzten **ordubetez.**

**Otsailaren 15ean**, Lopidanan Andaluziako autobusa hartzera zihoazen senide batzuk **Guardia Zibilaren kontrol** batean eduki zituzten denbora askoan geldirik. Beraiek bertan zeuden bitartean ez zuten beste inor gelditu**.**

# miaketak senideei

**Villena espetxean**, abenduko aurrez aurreko bisitetan senideek miaketa sakonak pairatu zituzten: ume txikiei erraketak pasa zizkieten, emakumeei bularretakoak kendu arazi zizkieten, ukimeneko miaketak izan zituzten..

**Zuerako espetxean**, urtarrileko aurrez aurreko bisitetan sartzerakoan miaketa sakonak jasan behar izan zituzten. Ordura arte arkuan pasa behar izaten zuten, baina, urtarrilean arkuak zaratarik atera ez arren gelara sartu eta ukimenezko miaketak egin zizkieten.

# bisita galduak

**Muret Seysses espetxean**, Juan Carlos Estevezen senideak bisita gabe geratu ziren. Senideak han zeudela esan zieten Estevez ez zegoela bertan.

Julen Mujikaren senideak otsailaren 13an, **Villefranche-sur-Saone** espetxera joan ziren bisita burutzera. Han Muret-Seysses presondegira lekualdatua izan zela jakinarazi zieten.

Aingeru Cardaño **Soto del Real espetxean** zegoen, ostiral batean atera eta astelehenean iritsi zen Ocaña I espetxera. Astelehen horretan aurrez aurreko bisita zuen Soton, eta senideak bisitara joan ziren, baina, Aingeru ez zegoen bertan. Bisitarik gabe gelditu ziren.

Olga Comes **Soto del Real** espetxean zegoen, eta Mansillara leku aldatu zuten. Senideak Sotora joan zirenean aurrez aurrekora, esan zieten jada ez zegoela bertan. Ondorioz bisita galdu zuten.

# askatasunak

**Jesus Bollada** (Barakaldo)**,** otsailaren 14an. 26 urte espetxean igaro ostean**.**

**Mikel Olza** (Iruñea), otsailaren 16an. Zigorra beteta.

**Ugaitz Astiz** (Iruñea), otsailaren 16an. Zigorra beteta.

**Ailande Hernaez** (Gasteiz)**,** otsailaren 17an. Zigorra beteta.

**Iñaki Pujana** (Otxandio)**,** otsailaren  21ean. 27 urte espetxean igaro ostean.

**Asier Tapia** (Donostia), otsailaren 23an. 5 urte espetxean igaro ostean.

**Beñat Atorrasagasti** (Lesaka), otsailaren 25ean. Behin-behineko askatasunean.

# espetxeratzeak

**Alberto Gomez** (Barakaldo), otsailaren 8an, Barakaldon. Basaurin espetxeratua izan da.

**Aitor Franco** (Orereta), otsailaren 13an. Martutenen espetxeratua dago.

**Oier Ibarguren** (Donostia), otsailaren 21ean. Moulins (Frantzian) atxilotu zuten. Fresnesen espetxeratua izan da.

**Arkaitz Varea** (Antsoain), otsailaren 21ean. Moulins (Frantzian) atxilotu zuten. La Santen espetxeratua izan da.

# leku aldatzeak

## destinu aldaketak

### Espainiar estatua

**Aingeru Cardaño** (Bilbo), Soto del Real-etik Ocaña I-era.
**Kristina Goirizelaia** (Igorre), Soto del Real-etik Estremera-ra.
**Eneko Bilbao Aresti** (Bilbo): Soto del Real-etik Alcala Meco-ra.
**Olga Comes Arranbillet** (Iruñea): Soto del Real-etik Mansilla-ra.

### Frantziar estatua

**Andoni Lariz** (Ziortza-Bolibar), Fleury-tik Bois D'Arcy-ra.
**Julen Mujika** (Donostia), Villefranche-tik Muret Seysses-era.
**Oier Ardanaz** (Iruñea), Nantes-etik Poitiers-Vivonne-ra.
**Xabier Aranburu (Bilbo),** Bourg en Bresse-tik Muret Seysses-era.

## dilijentziak

ESPAINIAR ESTATUA
Manex Castro (Villabona), Puerto III-tik Zaballa-ra.
Ibai Beobide (Bilbo), Puerto III-tik Valdemoro-ra.
Josune Balda (Oiartzun), Valencia II-tik Soto del Real-era.
Jose Agustin Camacho (Hernani), Valencia II-tik Valdemoro-ra.
Jon Olarra (Donostia), Granada-tik Valdemoro-ra.

FRANTZIAR ESTATUA
Mikel Karrera (Iruñea), Villepinte-tik Fresnes-era.
Aitzol Iriondo (Donostia), Bois D'Arcy-tik La Sante-ra.
Urtzi Etxebarria (Donostia), Osny-tik La Sante-ra.
Jurdan Martitegi (Durango), Nanterre-tik Fleury-ra.
Oihan Barandalla (Iruñea), Bourg en Bresse-tik La Sante-ra.
Ander Mujika (Donostia), Bourg en Bresse-tik La Sante-ra.
Marixol Iparragirre (Eskoriatza), Lyon-etik Fresnes-era.

# Amaia Izko abokatuarekin elkarrizketa



**Martxoaren 20an, Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiko Gela Nagusia (uste dut horrela deitzen dela), Ines del Rioren kasuaren inguruko erabaki bat hartzeko bilduko da lehen aldiz. Baina, zer da zehazki aztertu eta erabakiko dutena?**

- Aztertu eta erabakiko dutena izango da estatu espainolak uztailaren 10ean TEDH (Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegia) delakoak emandako Ines Del Rioren aldeko ebazpenaren kontra jarritako helegitea.

Aipatutako sentenzia ezagutzera eman zen egunean bertan, ezagutu eta ordu laurdenera esango nuke nik, gobernu espainoleko barne ministroak helegingo zutela esan zuten. Harrez geroztik bi gauza egin dituzte. Lehenik eta behin. Areto Haundiak (Grand Chambre) berraztertzeko eskaera egin eta, honi behin tribunalak aldeko erantzuna eman, bere sentenziaren kontrako helegitea aurkeztu. Baina orain egin behar dena ez da zehazki "berrazterketa" bat, dena zerotik aztertukoduelako berriro Areto Handiak. Esan nahi dudana da aurreko sentenziak ez duela joku zelaia mugatzen. Eztabaidak ez dira izango bakarrik ebazpen horrek ematen dituen argudioei eta alegazioei buruzkoak. Nahiz eta, logikoa denez, sentenzia horrek asko markatu, batez ere eztabaida nagusien nondik norakoak, errealitatea da estatuak planteatu duela doktrinaren defentsa orokor bat, perspektiba guztietatik begiratuta.

Beraz, aztertuko dena izango da berriz ere modu orokor batean doktrina osoa, bere izaera, bere egokitasuna, bere aplikazioa eta funtzezko eskubidetan duen, edo izan dezaken, eragina.

**Esan bezala, martxoaren 20an hasiko dira erabakia aztertzen. Noiz izando dugu erabakiaren berri?**

- Hori ez dakigu eta ez dakit bista egin ondoren momenturen batean zehaztuko diguten ala ez. Baina dakiguna da egingo den bista beraien arteko eztabaida zein debaten abiapuntua dela eta ez bukaera. Beraz, logikoa denez, momentuan bertan ez da ebazpena jakitera emango eta, ziur aski, hilabeteak pasako dira ebazpena eman eta jakin arte.

**197/2006 doktrina aplikatua duten presoen abokatuek, zer aurreikuspen duzue?**

- Oso zaila da ezer aurreratzea honelako kasu batean. Guk badakigu oso jarrera tinkoa dugula termino juridikoetan. Badakigu ere uztaileko sentenzia oso sendoa dela, pisu handiko arrazoiak ematen dituela eta juridikoki ongi argudiatua dagoela. Hortik ere badator gure jarrera juridikoaren tinkotasuna, noski.

Baina hemen jokuan daudenak ez dira bakarrik planteamendu juridikoak. Hori bistan dago. Hemen jokuan dagoena da estatu espainolak preso politikoen kontra indarrean duen politika errepresiboaren osagai garrantzitsuenetako bat da. Eta horrela ari da jokatzen estatu espainolak eta horrela segituko du jokatzen. Beraz, elementu edota argudio juridikoez gain, beste osagai asko daude zer nolako eragina izango dezaketen ez dakigunak.

"Jokuan dagoena da estatu espainolak preso politikoen kontra indarrean duen politika errepresiboaren osagai garrantzitsuenetako bat da."

Horrek, hala ere, ez digu indarra kentzen eta ez die gure argudioei indarra kentzen. Guk gurera. Afera hau irabazi daitekelakoan baikaude, zailtasunak zailtasun.

**Eta Ines del Rioren kasuaren inguruko ebazpena, askatasunaren aldekoa bada, zein izando da jarraitu beharreko prozedura?**

- Berez tribunalak mantentzen badu uztailean esandakoa, Inesen kasuan argi dago zer egin behar den eta zer gertatu behar den. Beste gauza bat izango da zenbat denbora kostatuko zaigun eman behar diren pausuak emateko, neurri batean estatuaren eta bere tribunalen esku geratzen delako.

Demagun bada, sentenziak aurrekoa berresten duela. Horrek esan nahiko du, Estrasburgoko tribunalak esana izango duela Inesen egoerak funtsezko eskubideak urratzen dituela eta egoera hori ezin dela mantendu.

Gobernuko zenbait ordezkarik esan izan dute hori ez dela bete behar, Estrasburgoko sentenziak ez direla estatu espainolean gauzagarriak. Beno, hau ez da honela. Egia da, hori aitortu behar da, estatu espainolean ez dagoela sententzia hauek ejekutatzeko barne tresna bat. Hori aspaldin martxan jarri behar zen, baina espainarrak ez direnez giza eskubideen aintzindariak, ez horixe, mekanismo hauek oraindik orain ez dira existitzen.

Baina horrek ez du esan nahi sententziak

ez direnik bete behar. Ezta gutxiago ere! Bete egin behar dira, inongo zalantzarik gabe.

Eta gainera kasu honetan oso erreza da betetzea. Izan ere, gartzelan mantentzen duen ebazpena (bere momentuan doktrina aplikatu zioten ebazpena, hain zuzuen ere) nuloa izendatu behar da, oinarrizko eskubideak urratzen dituelako. Eta ezin izango zitzaionez doktrina aplikatu, aprobatu beharko litzateke bere aurreko lizenziamendu proposamena, 2008ko uztailerakoa, hain zuzen ere. Eta hori, auzitegi nazionalak berak egin dezake. Horren sinple eta horren errez.

Ikusi beharko da, hala ere, horren errez konpontzen duenentz auzitegiak, noski, ez baikara inozoak eta badakigu zein paper duen auzitegi nazionalak presoen kontra, eta zein paper garrantzitsua jokatu zuen doktrina honen formulazioan.

"Ez baikara inozoak eta badakigu zein paper duen auzitegi nazionalak presoen kontra, eta zein paper garrantzitsua jokatu zuen doktrina honen formulazioan".

**197/2006 doktrina aplikatuta duten eta espetxean jarraitzen duten presoengan zer eragin izan dezake aldeko ebazpenak?**

- Galdera honen erantzuna aurreko erantzunarekin lotu behar da, noski. Estrasburgoko tribunalak uztaileko sententzia mantenduz gero horrek esan nahiko du doktrina, termino juridikoetan eta eskubideen errespetoak inposatuta, hilda dagoela, besteak beste, estatua behartuta egongo litzatekelako berriz ere, beste inoren kasuan, urraketa hau ez gertatzeko, eta hori lortzeko hartuko dituen neurrien berri Estrasburgoko tribunalari emateko. Baina ikusi beharko da hori horrela izan ez dadin noraino jotzeko prest dagoen estatu espainola. Hor dago gainontzeko asunto guztien garapenaren koxka.

Hala ere, gehiago ala gutxiago kosta daitekeen arren, horrelako ebazpen batek doktrinaren erabateko desaktibazioa ekarriko luke, zalantzarik gabe.

**Ebazpena Ines del Rioren askatunaren aurkakoa bada, berriz, zer gertatuko da oraindik Estrasburgora iritsi ez diren errekurtsoekin?**

- Prinzipioz ebazpen orokor bat espero dugu. Onerako nahiz txarrerako. Horrelakoa da, hain zuzen ere, uztaileko ebazpena. Estrasburgok badaki zein kasuren aurrean dagoen. Zein den doktrina honen sorbura eta zeintzuk bere inplikazioak. Beraz, ez da pentsatzekoa modu orokor batean abordatuko ez lukeen ebazpen bat ematea.

Beraz, txarrerako bada, hor bukatuko litzateke ibilbide hau, gainontzeko demanda guztietarako marjenik ez litzatekelako geratuko.

**Estrasburgoko Auzitegiak, espainiar estatuaz gain, beste herrialderen baten presiorik jasan al du? Eta espainiar estatuaren barne mailako arazo bat bada, zergatik gertatzen da hori?**

- Espainiar estatuarentzat gai



honek duen pisua ikusita ez dugu inongo zalantzarik beste estatu batzuen babesa lortzen saiatuko dela eta horretan ari dela, nolabait berak izan dezan "garaipena".

Itunak non bilatuko dituen? Egia da 197/2006 doktrina Espainiaren barne-mailako kontu bat dela. Espainiaren legegintzakoa bakarrik den kontu bat da, gainera. Baina, guzti honen gainetik dagoen beste erabaki bat dago guztiaren atzean; hau da, ze puntutaraino duten estatuek euren legediaren arabera nahi dituzten zigorrak ezartzeko burujabetza, Europako Auzitegiak honetan esku sartu gabe?

Beraz, estatuek euren legediarekiko duten burujabetza hau mantentzeko arrazonamendua erabiliko du estatuak beste estatuen babesa jasotzeko. Horrela, estatu bakoitzak jarraituko luke bere zigorrak ezartzen eta betearazten.

Horrexegatik, espainiar estatuaren helburua honako eztabaida hau gai horren inguruan zentratzea da.

Hala ere, Auzitegiak uztailean jada argi azaldu zuen bere iritzia, eta 2008an irekitako bide beretik jarraitzea espero dugu. Estatuek burujabetza dute zigorrak betearazteko, bai. Baina, zigor hauek betearazteak presoarentzat espetxean egon behar duen denboran eragin handi eta larri bat badu, egoera hau Auzitegiak aztertu ahal izango du.

**Nola egongo da osatua errekurtsoa aztertuko duen aretoa? Ines del Rioren kasuaren inguruko ebazpena eman zuten epaile berak osatuko al dute?**

- Aretoa 17 magistratuz osatua egongo da eta Auzitegiko Lehendakaria izango da burua. Beraz, aretoa magistratu

"197/2006 doktrina Espainiaren barne-mailako kontu bat dela. Espainiaren legegintzakoa bakarrik den kontu bat da. Baina beste erabaki bat dago guztiaren atzean; hau da, ze puntutaraino duten estatuek euren legediaren arabera nahi dituzten zigorrak ezartzeko burujabetza"

# etxerat

**Urtarrilak 31**. Etxerat elkarteak **prentsaurreko** bat eskaini zuen Donostiako Koldo Mitxelena kulturunean, XII. **Batzar Nazionala aurkezteko.**




**Otsailak 17. Etxeraten XII. Batzar Nazionala.** Etxerat osatzen dugun preso, iheslari eta deportatuen senide eta lagun guztiok Leioako Campusean bildu ginen gure XII. Batzar Nazionala burutzeko. Urteroko zita da honakoa, eta ezinbestekoa. Izan ere, bertan datorren urteari begira ditugun lan ildo nagusiak eta eginbeharrak finkatu genituen. Gainera, gure arteko kohesioa lantzeko ere aukera paregabea izan zen. Bide horretan, Batzar Nazionalaren ostean, guztiok elkarrekin bazkaldu genuen.

Batzar Nazionaleko bideoa, lotura honetan aurkituko duzue ikusgai: **http://www.youtube.com/watch?v=eiWkgcPLKFw**



# agenda

## Etxerat

**Martxoak 4tik 8ra.** Etxerateko kidea den Jone Artola -28 urte espetxean eta 2006az geroztik 197/2006 doktrina aplikatuta duen Joseba Artola presoaren arrebak- martxoaren 4tik 8ra, **Bruselara doan ordezkaritzan** Etxeraten izenean joango da. Bertan ordezkaritza osoa europarlamintariekin eta instituzio ezberdinekin bilduko da. Bilkura hauetan Etxerateko ordezkari bezala, Artolak, gure eta errepresaliatuen testigantza lehen pertsonan Europara trasladatuko du, martxoaren 20an Estrasburgo 197/2006 doktrinaren inguruan aztertzen hasiko den errekurtsoaren testuinguruan.

## Herrira

**Martxoak 16, Tafallan, Manifestazioa.** Eguerdiko 12:00etan, Udal Plazan

**Martxoak 20, Euskal Herri osoan** mobilizazioak.



# Etxerat

**Martxoaren 17an,** Etxerat elkarteak antolatutako bertso saio bat ospatuko da Gernikako Jai Alai pilotalekuan, 17:30ean. Aurtengoa lehen aldia izango den arren, punta puntako bertsolariek parte hartuko dute bertan. Hona hemen bertso saioko kartela:

Bertso saioa
Martxoak 17
arratsaldeko 5:30etan
Gernikako
JAI ALAI pilotalekuan
etxean nahi ditugu!
Xabier Amuriza
Igor Elortza
Unai Iturriaga
Jone Uria
Fredi Paia
Xabi Paia
Gai Jartzailea: Josu Goikoetxea
Etxahun Lekue
Onintza Enbeita
Arkaitz Estiballes
Sarrerak aldez aurretik 10 euro, txarteldegian 12 euro
Salmenta lekuak:
Gernikan, Auzokoa eta Arrano tabernetan.
Bilbo, Erronda kaleko Herriko tabernan.
Durangon, Plateruenan.
Markinan, Txokoan.
etxerat Elkartea
Laguntzaileak
berria
hitza
gara
infozazpi
GERNIKA LUMO

# euskal preso politikoak

## EUSKAL HERRIA

**BASAURI**
1.Gogorza Otaegi, Aitzol
2.Gomez Gonzalez, Alberto
3.Gomez Lopez, Patxi

**MARTUTENE**
4.Antza Illarreta, Arkatiz
5.Biguri Camino, Jose Angel
6.Franco Gonzalez, Aitor
7.Lujanbio Galparsoro, Xabier
8.Linazasoro Lopez, Maitane
9.Lopez de Luzuriaga Fdez, Gotzone

**ZABALLA**
10.Martin Hernando, Txus

## ESTATU ESPAINOLA

**A LAMA (Pontevedra)**
1.Akaiturri Irazabal, Iñigo
2.Alonso Abad, Fernando
3.Arizkuren Ruiz, Jose
4.Bravo Maestrojuan, Josu
5.Gabirondo Agote, Juan Maria
6.Herrera Vieites, Aitor
7.Ijurko Iroz, Hodei
8.Makazaga Azurmendi, Xabier
9.Marin Mercero, Iñaki
10.Martinez Ahedo, Gorka
11.Nieto Torio, Ruben
12.Olarra Agiriano, Joxe Mari
13.S Sebastian Gaztelumendi, Mikel
14.Trenor Dicenta, Karlos
15.Zubia Urrutia, Iker
16.Berriozabal Bernas, Inma
17.Martinez Garcia, Idoia

**ALCALA MECO**
18.Bilbao Aresti, Eneko
19.Goieaskoetxea Arronategi, Eneko
20.Zelarain Ortiz, Oskar

**ALGECIRAS (Botafuego)**
21.Aginaga Ginea, Ibai
22.Albisu Hernandez, Iñigo
23.Arrieta Llopis, Mikel
24.Benaito Villagarcia, Mi Angel
25.Beroiz Zubizarreta, Andoni
26.Cristobal Martinez, Carlos
27.Fano Aldasoro, Unai
28.Garcia Sertutxa, Gorka
29.Gaztelu Otxandorena, J. Miguel
30.Loran Lafourcade, Gorka
31.Piriz Lopez, Juan Manuel
32.Sola Campillo, Aurken
33.Urizar de Paz, German
34.Egues Gurrutxaga, Ana Belen
35.Garbayo Ruiz, Arantza
36.Noble Goikoetxea, Inmaculada

**ALMERIA**
37.Arregi Imaz, Xabier
38.Arronategi Azurmendi, Kepa (1)
39.Arruarte Santacruz, Garikoitz
40.Del Olmo Vega, Fernando
41.Erro Zazu, Iñaki
42.Ginea Sagasti, Josu
43.Krutxaga Elezkano, Iñaki
44.Larrinaga Rodriguez, Asier
45.Olaiz Rodriguez, Jorge
46.Urra Guridi, Kepa
47.Viedma Morillas, Alberto
48.Egiguren Enbeita, Olatz
49.Yañez Ortiz de Barron, Iratxe

**ARANJUEZ (M-VI)**
50.Aginako Etxenagusia, Asier
51.Gonzalez Sola, Igor
52.ArmendarizG.Langarika,Lierni + umea
53.Garaizar San Martin, Nerea + umea
54.Prieto Furundarena,Anabel + umea
55.Saez de la Cuesta, Alicia + umea

**BADAJOZ**
56.Del Hoyo Hernandez, Kepa
57.Fraile Iturralde, Gorka
58.Gabiola Goiogana, Andoni
59.Garcia Justo, Asier
60.Igerategi Lizarribar, Iñaki
61.Lesende Aldekoa, Txomin
62.Marin Etxebarria, Alberto
63.Orbegozo Etxarri, Mikel
64.Ugalde Zubiri, Andoni

**BONXE (Lugo)**
65.Amantes Arnaiz, Josu
66.Solana Arrondo, Kepa Mirena

**BRIEVA (Avila)**
67.Agirre Garcia, Oihana
68.Lasagabaster Anza, Olatz
69.Mendizabal Mujika, Idoia
70.Zuazo Aurrekoetxea, Maialen

**BURGOS**
71.Arriaga Ibarra, Jesus Felipe
72.Mendizabal Alberdi, Juan Maria
73.Salutregi Mentxaka, Jabier
74.Urrutia Gonzalez, Oier
75.Zurutuza Sarasola, Jose Antonio

**CACERES II**
76.Balanzategi Agirre, Xabier
77.Betolaza Vilagrasa, Gorka
78.Lima Sagarna, Iker
79.Olabarrieta Olabarrieta, J Mª
80.Olaizola Baseta, Aitor
81.Otegi Eraso, Andoni
82.San Argimiro Isasa, Mikel
83.Tobalina Rodriguez, Juan
84.Txokarro Zoko, Jorge

**CASTELLO I**
85.Altable Etxarte, Jesus Mª
86.Beristain Urizarbarrena, Iker
87.Cabello Perez, Andoni
88.Cano Hernandez, Pedro Maria
89.Gallastegi Sodupe, Orkatz
90.Gandiaga Ibarzabal, Estebe
91.Larrea Azpiri, Zunbeltz (1)
92.Lezkano Bernal, Sergio
93.Otxoa de Eribe Landa, J. Angel
94.Igarriz Izeta, Marta
95.Zenarrutzabeitia Iruguenpagate, Zaloa

**CASTELLO II –ALBOCASSER**
96.Aldasoro Magunazelaia,Ramon
97.Alonso Alvarez, Raul
98.Arri Pascual, Alvaro
99.Codo Callejo, Jagoba
100.Etxaniz Garcia, Julen
101.Fresnedo Gerrikabeitia, Aitor
102.Iragi Gurrutxaga, Harriet
103.Legorburu Gerediaga,Juan jose
104.Markes Zelaia, Patxi
105.Perez Zorriketa, Ugaitz
106.Terrones Arrate, Jagoba

**CORDOBA (Alcolea)**
107.Alonso Rubio, Iñaki
108.Arruti Azpitarte, Juan Carlos
109.Calabozo Casado, Oskar
110.Cañas Carton, Iñaki
111.Gallaga Ruiz, Javier
112.Perez Aldunate, Xabier
113.Polo Escobes, Sergio
114.Portu Juanena, Igor
115.Solana Matarran, Jon Igor
116.Urretabizkaia Saukillo, Jon
117.Vidal Alvaro, Gorka
118.Virumbrales Amenabar Asier
119.Etxebarria Caballero, Beatriz
120.Perez Aristizabal, Eider
121.Toda Iglesia, Teresa

**CURTIS (A Coruña)**
122.Blanco Santisteban, Zigor
123.Borde Gaztelumendi, Joseba
124.Eskudero Balerdi, Gregorio
125.Gomez Ezkerro, Jesus Maria
126.Larrinaga Martin, Julen
127.Mariñelarena Garziandia, Luis
128.Murga Zenarruzabeitia, Andoni
129.Plazaola Anduaga, Alberto
130.Prieto Jurado, Sebastian
131.Salaberria Etxebeste, Emilio
132.Troitiño Arranz, Txomin
133.Del Rio Prada, Ines
134.Etxebarria Simarro, Leire
135.Sagastume Arrieta, Maitane

**DAROCA**
136.Artola Ibarretxe, Joseba
137.Coloma Ugartemendia, Asier
138.Etxeberria Pascual, Jose
139.Geresta Azurmendi, Ander
140.Rojo Gonzalez, Juan Ramon
141.Zulueta Vazquez, Pagoa

**DUEÑAS (Palencia)**
142.Bravo Saez de Urabain, Zigor
143.Ibañez Diez, Raul
144.Karrera Arenzana, Asier
145.Maruri Basagoitia, Lander
146.Octavio Martikorena, Diego
147.Vargas Olasolo, Mikel
148.Zalakain Garaikoetxea, Jesus Mari

**EL DUESO**
149.Arrieta Prz de Mendiola, Ismael
150.Diez Usabiaga, Rafael

**ESTREMERA (MADRID VII)**
151.Badiola Lasarte, Asier
152.Gonzalez Gonzalez, Jon
153.Imaz Munduate, Iñaki
154.Otaño Labaka, Juan Ignacio
155.Preciado Izarra, Jon Kepa
156.Goirizelaia Gonzalez, Cristina
157.Jacinto Garcia, Sonia

**FONCALENT (Alacant I)**
158.Abad San Pedro, Endika
159.Badillo Borde, Irkus
160.Fagoaga Igantzi, Iñaki
161.Gonzalez Pavon, Joseba
162.Mujika Zubiarrain, Garikoitz
163.Uranga Salbide, Patxi
164.Coello Onaindia, Aitziber
165.Gallastegi Sodupe, Lexuri
166.Guemes Oiarbide, Ane Itxaso

**GRANADA (Albolote)**
167.Aginagalde Urrestarazu, Jon
168.Agote Cillero, Arkaitz
169.Aizpuru Giraldo, Eneko
170.Apaolaza Sancho, Iban
171.Barrios Martin, Jose Luis
172.Beaumont Etxebarria, Iñaki
173.Bilbao Solaetxe, Unai
174.Coto Etxeandia, Egoitz
175.Legaz Irureta, Armando
176.Lopez de Okariz, Unai
177.Miner Villanueva, Imanol
178.Olarra Guridi, Juan Antonio
179.Sanpedro Larrañaga, Premin
180.Ugarte Lpez de Arkaute, Diego
181.Delgado Iriondo, Agurtzane
182.Lizarralde Palacios, Ana
183.Mujika Goñi, Ainhoa
184.Uzkudun Etxenagusia, Maritxu

**HERRERA DE LA MANCHA**
185.Aranburu Muguruza, Xabier
186.Armendariz Izagirre, Iñaki
187.Askasibar Garitano, Mikel
188.Balerdi ibarguren, Xabier
189.Erostegi Bidaguren, Joseba
190.Francisco Rodriguez, Niko
191.Gorostiaga Gonzalez, Pablo
192.Hidalgo Lertxundi, Aimar
193.Lopez Gomez, Jon
194.Lujanbio Galdeano, Fco Javier
195.Marcos Alvarez, Faustino
196.Markez del Fresno, Kepa
197.Rodriguez Cordero, Gonzalo
198.Ruiz Jaso, Zigor
199.San Epifanio San Pedro, Felipe
200.San Pedro Blanco, Jon Mirena
201.Turrientes Ramirez, Mitxel
202.Urain Larrañaga, Jokin

**HUELVA - II**
203.Aparicio Benito, Koldo
204.Arginzoniz Zubiaurre, Aritz
205.Balerdi Iturralde, Juan Carlos
206.Besance Zugasti, Juan Carlos
207.Franco Martinez, Bittor
208.Garcia Jodra, Fernando
209.Lasa Mendiaraz, Sebastian
210.Lopez Anta, Angel
211.Maurtua Eguren, Aitzol
212.Olabarrieta Colorado, Iker
213.Ostolaza Ikaran, Eneko
214.Ruiz Romero, Patxi
215.Zelarain Errazti, Julen
216.Bengoa Ziarsolo, Nerea
217.Txurruka Madinabeitia, Lurdes

**JAEN – II**
218.Garcia Aliaga, Aitor
219.Jimenez Martin, Mikel
220.Martinez Izagirre, Jabier
221.SarasolaYarzabal, Mattin
222.Usandizaga Galarraga, Xabin
223.Zabarte Arregi, Jesus Mari
224.Zapirain Romano, Iñigo (11)
225.Ziganda Sarratea, Josu
226.Bakedano Maidagan, Oihane
227.Ernaga Esnoz, Joxepa

**LOGROÑO**
228.Aragon Iroz, Santiago
229.Etxaburu Markuerkiaga, Eneko
230.Mtz de Lafuente Intxaurregi, JR
231.Otegi Mondragon, Arnaldo
232.Pascual Muneta, Garikoitz
233.Rodriguez Torres, Arkaitz
234.Alonso Curieses, Anuntzi

